# Independentziaren Etxea museoa

**Independentziaren Etxea museoa**



**Kokapena**

| | |
|---|---|
| **Herrialdea** | Paraguai |
| **Capital district or territory** | Capital District |
| **Hiria** | Asuncion |
| **Koordenatuak** | 25° 16′ 50″ S, 57° 38′ 10″ W (https://tools.wmflabs.org/geohack/geohack.php?pagename=Independentziaren_Etxea_museoa&language=eu&params=-25.280569_N_-57.636222_E_region:_type:landmark_scale:_dim:_globe:) |

**Historia eta erabilera**

| | |
|---|---|
| **Irekiera** | 1965eko maiatzaren 14a |
| **Inaugurazioa** | 1965eko maiatzaren 14a |

Webgune ofiziala (http://www.casadelaindependencia.org.py/index.html)

**Indepentziaren Etxea** (gaztelaniaz: *Casa de la Independencia*), 1965eko maiatzaren 14az geroztik **Independentziaren Etxea museoa** (gaztelaniaz: *Museo Casa de la Independencia*), Paraguaiko eta Asuncion hiriko historian balio handia duen eraikina da. Bertan 1811ko maiatzean Paraguai Espainiatik independizatu zuten protagonista nagusiek ezkutuko bilkurak egiten baitzituzten.

Independentziaren Etxea Asunciongo erdialde txikian (gaztelaniaz: *Microcentro*) dago, *Presidente Franco* eta *14 de Mayo* kaleen izkinean. 1965az geroztik museo bihurtua, agiri eta objektu historikoak gordetzen ditu.

## Historia

Etxea Antonio Martínez Sáenz espainiarrak eraiki zuen 1772an. Honek Petrona Caballero de Bazán paraguaitarrar zuen emazte. Etxeak hormak adobezkoak ditu; sabaia teilaz estalita dago; eta oinarria palmondoz eta guaduaz eraikita.

Martínez Sáenz anaien orubean Pedro Juan Caballerok ostatu hartzen zuen Tobatí jaioterritik hiriburura joaten zenean.

Martíneztarren etxearen aurrean Juana María de Lararen etxea zegoen. Vicente Ignacio Iturbe, haren biloba, haren etxean ostatu hartu ohi zuen. Juan Bautista Rivarola kapitaina, Barrero Granden bizi zena, hirira joaten zenean bere amaginarrebaren etxean geratzen zen, etxartearen ondoan zegoena. Fulgencio Yegros itzaltsuak eta Mariano Recalde tenienteak Martíneztarren etxera joaten ziren maiz, nondik Facunda Speratti eta Virginia Marín gorteatzen baitzituzten hurrenez hurren.

Martínez Sáenz anaien egoitza espainiarren mendearen aurka konspiratzeko leku ezin hobea izan zen. Maiatzaren 14ko gauean Pedro Juan Caballero buru zuen gizon-talde bat aldameneko etxartetik irten eta handik etxadi gutxira zegoen Espainiako gobernadorearen etxera zuzendu zen. Koartelak hartu ondoren, maiatzaren 15eko gauerdian Bernardo de Velazco y Huidobro gobernadoreak agintea matxinoei eman zien, horrela Paraguai herrialde burujabe bihurtuz.

1943an Paraguaiko Gobernuak etxea erosi zuen. 1961ean Monumentu Historiko Nazionala deklaratu zuten.

## Kanpo estekak

- **(Gaztelaniaz)** Independentziaren Etxearen webgunea (http://www.casadelaindependencia.org.py/)

